# GOIAINGERUAK: SAN MIGEL...



**Sarrera-abestia**

**Aita baten semeok**,
sinismen bakar bat dogunok,
anai artean batu garanok,
kantuz gatoz,
kantuz zugana, Jauna.

*Seme gara, bai, baina*
*seme izaten ba ete dakigu?*
*Anai gara, bai, baina*
*anai izaten ba ete dakigu?*
*Seme izatera, anai izatera, Jauna, heldu nahi dogu.*

**ERANTZUN-SALMOA** Sal 138 [137], 1-2a. 2b-3. 4-5 (R/. ik. 1c)

**R/. Eresi egingo deutsut, Jauna, aingeruen aurrean**




Eskerrak emoten deutsudaz, Jauna, bihotz-**bi**hotzez,
nire hitzak entzun dozu**za**lako;
kantuz goratzen zaitut aingeruen **au**rrean,
eta zure tenplu santurantz begira ahus**pez**ten naz. R/.

Eskerrak emoten deutsadaz zure izenari,
zure maitasun eta leialtasu**na**gaitik,
parebakoak egin dozuz-eta

zeure izena eta **<u>pro</u>**mesa.
Dei egin neutsunean, eran**<u>tzun</u>** zeunstan,
kemena bizkortu bi**<u>ho</u>**tzean. R/.
Eskerrak emongo deutsuez, Jauna, †
munduko errege **<u>guz</u>**tiek,
zure ahoko berbak en**<u>tzu</u>**tean;
kantuz ospatuko dabez Jaunaren **<u>bi</u>**deak:
handia da Jaunaren ospea **<u>be</u>**netan. R/.

**ESKARIAK**
*...eskatzen deutsugu, Jauna*
(**ZEUGAN DOGU USTE ONA**).

**Santu, santu, santua…**

**Hau da sinismenaren misterioa.**
Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!

**JAUNARTZEAN**

**MAITASUNA BAKEAREKIN BATERA**
Eskeintzeko nator esku emotera.

[1] *Alkarturik gaudenean Jaunaren aurrean*
*bardin izan behar dogu kalean.*

[2] *Anaitasun jatorrean esku emotean*
*bihotza senti behar da bakean.*

**Agurra**

**ALKARTUTA GOAZEN AURRERA KANTARI,**
**BIDEAK ZABALDUZ BETIKO POZARI (bir).**

*Maitasun ta zuzentasunez dezagun*
*lortu anaien askatasun,*
*Badator-eta Jaunaren betiko egun.*
*Hor dugu distiratsu egunsentiko argitasun.*